# URDANIBIA PLAZAKO PREOIEKTUARI EKARPENAK

Udal gobernuak aurkeztutako aurreproiektuari, BILDU udal taldetik hurrengo ekarpen, iradokizun eta kezkak aurkeztu nahi dizkiogu:

*PLAZA:*

1-Estetika eta izaera. Plazaren irudi berriak plazak historikoki izan denari erantzun behar dio. Irudiaz hitz egiten dugunean, eraikinen itxurari erreparatzen zaion bezala, **plazak hiriaren historian bere izaerarekin jokatu duen papera kontutan hartzea eskatzen dugu**. Plaza hau Irungo historiak izan duen bihotzetako bat da eta bihotz hori bizirik mantentzea eskatzen dugu.

2-**Animalien heldulekuak mantentzea eskatzen dugu**, hauek izan duten erabileragatik eta duten historia eta istorioengatik.

3-Espazio hau bertan egoteko eta honetaz disfrutatzeko gune bezala ulertzen dugu. Horretarako **eremu guztian bankuak egotearen beharra ikusten dugu** (ez soilik inguru jakin batean pilatzea)

4-Aktuazioak bere gain hartzen duen eremuaren zabaltzea helburua izanik, **Sargiarekin lotura zuzena edukitzea** eta ospitale zaharraren bilera aretoa eta Dolores Salis etorbidea banatzen dituen **hesia kentzea eskatzen dugu.**

5-Aktuazio guzti honetan **eremu estali baten beharra ikusten dugu**.

6-Plazan argiztapenari ematen zaion garrantzia ikusirik, argiztapen **instalazio berrietan energia berriztagarriak kontutan hartzea eskatzen dugu**, baita **inguruko kaleetan** egon daitezkeen argitasun arazoei ere erantzun bat ematea.

7-Zuhaitzak gaixorik daudela haitzaki harturik, horietako batzuk kendu nahi izateak kezka sortzen du. Hauek aldentzeko helburuarekin **kenduak izango diren zuhaitzen fitxa teknikoa publiko egitea eskatzen dugu.**

8-Obra amaitu ondoren zuhaitzen bizi kalitatea hobetzeko asmoarekin, hauek **kokatuko diren guneak tekniko ahal den bermerik gehien eskaintzen duen erantzuna ematea eskatzen dugu**. Lurraren iragazkortasuna, materiala, diseinua etab kontuan hartuz.

9-Hondakinen bilketa: a) auzotarren eta komertzioen **hondakin bilketarako edukiontziak non kokatuko diren argitzea** eta b) plazan bertan urtean zehar aurrera eramaten iren **ekimen ezberdinetan** (azoka, Irungo jaiak, San Tomas eguna,...) **gaikako bilketa hobetzeko plan berezi bat egitea** lan hauek probestuz.

10-Plazaren barruan **komun publikoen beharra ikusten dugu**.

*AZOKA:*

10-Behin lanak amaituta azoka gune ezberdinetan banatzea ondo badago ere, saltzaileen iritzia kontuan izanda, saltzeko gaika banatzeak kalte egingo ote dien beldur gara. Honen inguruan, eta saltzaileak parte hartzea bermatuz, **hausnarketa bat egitea eskatzen dugu**.

11-Saltzaileek obrak irauten duten bitartean eta ondoren, erabiltzen dituzten **ibilgailuak aparkatu ahal izateko alternatiba bat ematea eskatzen dugu**. Beti ere beraien beharrak kontuan izanik egun dituzten baldintzak ahalik eta gutxien aldatuz; distantzia, kostu ekonomikoa eta bestelakoak kontuan hartuz.

*JARDUERAK/EKINTZAK/JAIAK:*

12-Plazan historikoki egin diren ekintza ezberdinak (azoka, sagardo eguna, San Tomas feria, Irungo jaietako ekimen ezberdinak, Moskuko jaiak, euskal jira,...) **obrak irauten duten bitartean ingurunetik ez aldentzea** eta obrak **amaitzerakoan bertan**, **plazan, mantentzea eskatzen dugu.**

13-Jarduera ezberdinak burutzeko helburuarekin **eszenatoki finko eta estalia jartzea eskatzen dugu.**

14-**Txozna kopurua handitzeko aukera kontuan izatea eskatzen dugu**.

*APARKALEKUA:*

15-Lanak irauten duten bitartean eta ondoren, ezagutzen ditugun aparkalekuak desagertu egiten dira. Udal gobernu honek lanak iruten duten 18 hilabeteetarako San Juango aparkalekuan hilean 40€ ordainduta eskaintzen duten aukera ez zaigu nahikoa iruditzen. Bai lanak irauten duten denbora tartean eta ondorengorako ere, **alternatiba erreal bat eskatzen dugu**, distantzia eta egungo kostu ekonomikoa (hau da 0€) mantenduz.

*MUGIKORTASUNA:*

16-Oinezkoen lehentasuna duen espazioa bat sortzea helburua bada ere, trafikoaren fluxua behar beste jaitsi edo gutxituko denaren  kezka dugu. Noranzkoak aldatzen badira ere plazara gerturatzen den  trafikoa gutxitzeko ez ditugu alternabitak ikusten.

17-ASPACE-ra iritsi behar duten **pertsonen irisgarritasuna bermatzea eskatzen dugu**,  argi jarriz eta azalduz nondik eta nola iritsi.

*OBRA:*

19-Kontratazioa egiterako garaian **hitzarmen kolektiboak betetzearen beharra ikusten dugu**. Horrekin batera, **eskualdean langabezian dauden pertsonak kontratatu daitezela eskatzen dugu**..

20-Eremuaren garbiketa lanak egoki egin ahal izateko (makina “barredorak” erabiliz) zein lurzoru erabiliko den **kontuan izatea eskatzen dugu**.

21-Korrokoitz kalean hodietan egin beharreko obrak **13. zenbakiraino eramatea eskatzen dugu**.

*JARDUERA EKONOMIKOA:*

22-KBiziak programa behin obrak amaituta berraktibazioa helburu duela uste badugu ere, gaur egun dagoen jarduera ekonomikoa ez da kontuan hartzen. Gure kezka handia da, lan honek irauten duen bitartean egun existitzen den komertzioan eduki dezakeen eragin negatiboagatik. Beraz, **beharrezkoa ikusten dugu existitzen diren hauentzako laguntza plan bat egotea.** Bestetik, ezinbestekotzat jotzen dugu obrak irauten duten bitartean **hauei informazio guztia ematea** (epeak, iraupenak, fase ezberdinak, etab)

23-Komertzioak bizirauteko eta jarduera ekonomikoa mantentzeko ezinbestekoa da **obrak irauten duen bitartean azoka ingurune honetatik ez ateratzea**.

24-Inguruko komertzio eta ostalaritzak behar dituen **karga eta deskarga guneak edukitzea eskatzen dugu**. Baita, **funtzionamendu eraginkor bat bermatzea** eta honen inguruko ahalik eta **informazio argiena eskaintzea**.